


JOSEBA ARREGI EROSTARBE
1946. Arantzazu (Oñati).

1992. urtean atxilotu zuten estatu frantsesean eta 2000. urtean estraditatu zuten Espainiara. Egun Jaengo espetxean daukate. Hainbat erakusketa egin ditu areto ezberdinetan Frantzian preso zegoelarik. Oraingoa bere irudiak hitzez lagunduko ditu.

Nire mundua labirinto bat da. Ehundaka ate ehundaka sarraila, ehundaka kamera, dozenaka alarma eta mila ertz, mila izkina, mila txoko. Iluntasun ugari, ekiaren zeru gutxi eta naturarik deus ez! Labirintoan sartzen dena galdu egiten da, desorekatu. Hemengo labirintoan ez. Badakizu nora mugitu behar duzun 8:30ean, berriro itzultzeko. Erietxera joateko zazpi ate irekiko dizkizute banan banan, beste hiru ate han barnean, eta beste hainbeste itzultzean. Gero, 10:30ean, kiroldegira; berriro laberintoan itzulika, arropaz edo zapatilaz aldatua. Ordu bat eskasera, berriro itzuli! Labirintoko ertz, izkin, espazio, txoko, alde guztiak markatuak daude. Kontrolatuak gaude gu ere, gure burua eta memoria izan ezik. Tarte bat irekitzen delarik, zeru zati bat agertzen da, ideia bat, ilusio punttua… Leiho bat agertzean, norbait ikusten dugu; nor ote da? Pentsamendua lanean ari da. Hori ezaguna da! Hori berria da! Hori, hor, takillan dagoena, simpa da. Bestea, sasikumea…

Gure labirintoa puzzle bat da. Mila zati ditu, denak ezberdinak dira, eta ez zara galtzen. Oraingo aldian nagoen bunker honek baditu ehun metroko pasilloak; labirinto, modulu, ingreso, lokutorio, kiroldegi, futbol zelai, zine areto, kulturgune, erietxe, sukalde, mantenu eta segurtasun edo isolamendurako bidean; eta, erdi erdian, dorre erraldoi begiluzea! Pasillo horiek gure ikusmena engainatzeko eginak daude. Dotore mantentzen dituzte, preso sozial bolondresei esker, olibondo, pinu, larrosa, iturri, landare, lore, labanda, ezki, hortentsia, belardi, ezkai, krabelin eta bestez jantzitako lorategi eder bat bailiran…

Baina ez dago denborarik horretaz pentsatu eta jardinaz disfrutatzeko, ziztu bizian igarotzen ditugu pasillo horiek. Labirintoaren zati dira. Gu engainatzeko eginak. Alboetako hormak, kanpoko kaleak eta mendiak bezala margotuta daude. Ilusio faltsua eskaintzen dute horma horiek. Pasillo horietan urdinak daude, aingeru zaindariak, "kaleko trafikoa" gidatzen: "¿De qué módulo viene usted? ¿A qué modulo va usted? ¿Cómo se llama usted? ¿Qué módulo tiene usted? ¡Un parte por coger una rosa!". Donostiako kaleetan ere, 1960an, jendearen trafikoa zaintzen zuten: "¡A usted le pongo una multa por pasar el semáforo en rojo!".

Labirintoa da nire mundua. Puzzleak, ertzak, bazterrak, txokoak, dena dago bistan. Dena dago kontrolpean. Urtez urte bildutako esperientzia dute gainean, labirintoan inor galdu ez dadin, inor aspertu ez dadin. Estiloa aldatu diote. Itxura ere hobea du lehen baino. Arauak, ordea, aldatu egin dituzte, eta gaur egun bizirik irauten badugu, kondena guztia bete arte ez dugu askatasunik izango.

JOSEBA ARREGI EROSTARBE

Gauz ilunak
edo beltzak,
eta zikinak daudenean
batez ere: Beldurra sortzen dute.
Horrez aparte tristezia handia
ematen digute, baino ez luke
hola izan behar.

zergatik ikaratu eta
apaldu behar gera
errealitateak
esaten
duen
egiaren
aurrean ?

*"Gauz ilunak*
*edo beltzak,*
*eta zikinak daudenean*
*batez ere: Beldurra sortzen dute.*
*Horrez aparte tristezia handia*
*ematen digute, baino ez luke*
*hola izan behar.*

Zergatik ikaratu eta
apaldu behar gera
errealitateak
esaten
duen
egiaren
aurrean?"



**Joseba Arregi Erostarbe, marrazkiz marrazki.**

Kartzelan nola bizitzen ote den, nola irauten den… ez dakit zenbatek ez ote didan galdetu. “Eta ondo atera haiz, gainera” esan izan dit zenbaitek, harridura zintzoz seguru asko, eta niri bezala galdetu eta esango zieten beste hainbati. Ez dakit modu zientifikoan azaltzen kartzelari zelan egiten zaion aurre, zelan irauten den urteak eta urteak. Dakidana eta ikasi dudana da bakoitzak bere moduak dauzkala egunerokoan aurrera egiteko, ez erotzeko eta ez erortzeko. “Noizbaiten askatzen nautenerako” baino, “gaurko” eta “biharko” plan txikiak egunero egitea eta horretan konstantzia izatea da, esango nuke, kartzelak berak irents ez zaitzan metodoa.

Batzuek ikasketak egiten dituzte, beste batzuek kirola, irakurri… Ikasketak buruntzea preso askoren ekimen diziplinatua da kartzelan, eta kaleratzen garenerako prestatzea izan daiteke helburu. Kalean ere etorkizun den gerorako prestatzea izaten baita ikasketak egitea. Baina kasu gehienetan urruti xamar ikusten den egun horretarako prestatzea baino helburu hurbilagoa betetzen dute preso gehienentzat. Eta ikasketak egiteak bezala eskulanak egiteak, margotzeak berak.

Lehen ere egina dago Josebaren hainbat marrazkiren azterketa, “Kartzelako Leihotik” (Ataramiñe) liburuan, marrazkiaren azalpenak ere hor daude kasu askotan, eta beste liburu bat beharko litzateke hor agertzen ez diren margolan guztiak aztertzeko edo bakoitzari komentariotxo bat egiteko. Marrazki hauek kate-begiz kate-begi osatzen duten historia narratiboaz harago, bada Josebaren marrazkigintzan nabarmena iruditzen zaidan aspektu bat: bere ingurua margotzen du: inguru afektiboa, inguru geografikoa, inguru kulturala… Inguru hori margotuz eraikitzen ditu bere zutabeak, bere sostengarriak, hasiera batean agian inkontzientean zerabilen eta bizi beharrak eta bizinahiak erakusten zion iparrorratzari jarraituz.

Margotzea, adierazpide piktorikoa alegia, Josebaren bidea egiteko modua da, espetxea eta berak suposatzen duen guztiari aurre egiteko modua. Bere ariketa piktorikoa ez da garatzen soilik helburu artistiko baten bila, ez doa koadro perfektuaren bila. Badu funtzio gauzagarriago bat, koadroz koadro, marrazkiz marrazki lortzen duen funtzio bat: traba eta muga guztien gainetik bere bidea urratuz, edozein gizakirentzat orokorrean, eta frantziar edo espainiar espetxeetan gatibatua den euskal militante batentzat batik bat, egoera horrek suposatzen duena gainditu eta irabazle – espiritualki bere burua berrosatu eta kartzela ia abstrakzioraino gutxietsi - sentitzea.

Oroimineko geografia oso presente dago Josebaren marrazkigintzan. Behin eta berriz jotzen du bere herriko, etxeko, bere oroimenean oso kuttun eta hurbileko zaizkion motiboetara. Hortxe ageri dira jaiotetxea eta etxekoak, auzoak eta auzotarrak. Horiek margotuz berpiztu egiten du, presentera ekarri eta nolabait erreal bihurtu alegia, urruti eta faltan duena; gogoan duen espaziora joaten da marraztean. Espazio horretan aurkitzen ditu mendi edo ibaiak, zelaiak, herriak, baserriko ataria, zakurra, artaldea… Eta udazken-neguko koloreen artean usoak eta oilagorrak nola ez topatu! Baina paisaiak ez dira etxe ingurukoak soilik; hortxe daude etxetik ihes egin behar izan zuenetik ezagutu, miretsi eta bere ingurutzat hartu dituenak ere. Esan liteke folioa edo lientzoa urratuz doala, arian-arian memorian duen paisaia azaltzen zaion arte.

Jendeak, pertsonek, leku handia dute Josebaren espazio piktorikoan. Etxekoak eta auzokoak, burkide eroriak, lagunak, espetxean kide dituenak, behin eta berriz ageri dira. Zentzu horretan, norbanakoz norbanako, gizarte oso bat margotzen du, bere-berea duen gizartea, hurbil-hurbilekoa sentimentalki. Espetxeetan ikusi duen gizartea ere margotu du, euskal presoetatik haratago drogaren eta endekamenduaren izurritean bizi direnen gizartea.

Baina esango nuke margotzen dituen pertsonen artean leku oso nabarmena eta berebizikoa dutela emakumeek. Hor daude ama, neska-laguna, lagunak… Arestiren aitaren etxearen metaforari, amaren suaren metafora gehitzen zion euskal pentsalari batek, amaren su hori delako etxeari zutik eta bizirik eusten diona. Eta iruditzen zait bete-betean esan litekeela horixe Josebaren etxe afektiboari dagokionean. Ama margotzen duenean, etxeko emakumeak edo lagunak margotzen dituenean, bere margoetan neska-laguna (bera ere ama; seme alabarik izan ez arren emakume guztiak baitira nolabait ama) behin eta berriz presente dagoenean, bere mundu afektibo hori hauspotzen ari da, etxeko suari indar ematen ari da. Bere etxe afektiboaren sua, bihotza eta zutabe nagusia ere bada ama.

Espetxea bera da Josebaren beste motibo piktorikoetako bat, nahiko errekurrentea gainera. Batzuetan kanpotik begiratuko dio espetxeari, bestetan patioa agertuko da, ziega, galeria… Eta xehetasun txikiak ere bai, horma gainetako txarrantxak edo ateetako sarrailak, esku-burdinak, jangelako mahaiak eta bandejak… "Geografia" hori margotzeak badu zerikusia lekukotzarekin, ikusten duen horren testigantza uztearekin; salaketa ere badago kartzelako drogazaleak eta miseriaren atzaparretan eroriak margotzen dituenean. Hala ere, kartzela, bai eraikuntza orokorra eta bai kartzelaren barrunbeak – munstroaren, izuen gordelekuaren erraiak -, margotzen dituenean, kartzela eta kartzelak suposatzen duena desegite saioan ari da etengabe. Margotuz desegiten du kartzela, ingurua ixten dion eraikin zatar hori. Behin eta berriz margotu-desegin beharreko espazioa du espetxea, goizero ekin beharreko zeregina du, ezin utzia;

munstroa hortxe ageri zaiolako goizero, egunero, gauero; ziega margotuz desegiten du ziega, hormak edo txarrantxak margotuz eraisten ditu itxiturak, barroteak margotuz irekitzen ditu leihoak, sarrailak margotuz zabaltzen ditu ateak.

Izuen gordelekuan konstantzia nekagaitzean arituz munstroa gainditu duenaren keinua eskaintzen digu Josebak margo hauetan.

Hau guztia esanda ere, ez dugu agian asko esan, batzuentzat gehiegi igual esan dugu baina. Begiraleek ikusiko dute eta esan beharko dute zer ageri den euren iritziz.

Jokin Urain, 2015eko urria.



# AURRE HITZA

Gaur egungo teknologiaz egindako liburu eder batean bildu dituzte nik urteetan zehar gutunetan bidalitako marrazkiak, katalogo-liburua ederra iruditzen zait.

Marrazkiak baina, eskasak, inperfektuak, itsusiak. Lopez eskultore eta pintoreak dio gizon azkarrak margolan perfektuak eta osatuak egiten dituela; gizon ahulak, berriz, ahal duena egiten duela. Ni naiz ahal duena egiten duen horietako bat.

Marrazkien esanahia azaltzea ere nahiko erraza da niretzat. Neuk eginak dira. Neure bizitzan eta inguruan gertatuak, sufrituak edo sentituak dira, gutxienez bizitzaren zatitxo bat direlako. Bizitzan ordea, badira une zail eta gordin ugari, publikoki agertzerik nahi ez ditugunak, marrazkietan harrapa ezin direnak.

Ez dut ofizioez jardungo. Eskolan ondo landutako ofizioak “Akademiaren” ildokoak dira, lan perfektuak. Agian, Lopezek dioen bezela, gizon azkarrak dira lan “perfektuak” egiten dituztenak. Bere buruaz ari da…

Badira arrakasta lortzen duten “artistak” ere. Nola lortzen den arrakasta… konpara nezake zenbait politiko eta enpresa gizonen arrakastarekin. Lehendabizi, lotsagabea izan behar da. Txarlatana. Panazko txaketa aldatzeko prest. Lapur lepo txurien lagun, zenbait artistek berdin egiten dute. Gizartean arrakasta lortzeko, lotsagabea, egoista eta harroputza izanda, mezenas bat alboan jarri... eta lortu du arrakasta! Gero, ongiaren eta gaizkiaren gainetik jarriko dira. Horrela sortzen dira “jainko ttipiak”, ukitu ezin direnak…

Mundu horretatik eta Akademiatik urrun nago. Marrazkien bildumak herren geratu ohi dira gutunen zutikairik gabe, eta hauek zientoka gutun dira, harat-honat hedatuak, marrazkiak barne. Gutun eta marrazki hauetako bakoitzak nire lekukotasuna, egoera animikoa, zoritxarra, itxaropena eta osasuna adierazten ditu. Ez egia osorik, egia erdizka baizik: zentsuratua bizi izan naiz dozenaka urtetan zehar, eta gaur egun ere gainean ditugu, putreak bezala eta une oro, zentsoreok.
Mila aldiz idazten hasi eta utzi egin diot, egia osoa esan ezin den erresuman idazteak duen arriskuak hotzikara sortzen zidalako larruazalean. Egunen batean, agian, konturatu egingo dira egia osoaz, Egiazko Askatasuna izaten dugunean.



# *KIDE ASKATU BERRIEI GUTUNA*

*2013ko abendua*

*Gutuna kide askatu berriei*

*Zelan hortik?*

*Suposatzen dut zuen urduritasuna eta poza baretzen joango dela, eta honezkero hankak lurrean ipiniko zenituztela. Gu ere kezkaz eta adi egon gara azaro eta abenduko egun hauetan, etsaien mehatxuengatik eta agintari politikoek zer jarrera hartuko ote zuten. Baina baita pozik ere, Euskal Herriak eta lagunek atseginez hartu zaituztelako. Barru-barruko poza da gurea: zuen askatasuna geurea balitz bezala sentitu dugu. Badakigu urte batzuk gorabehera denok lortuko dugula askatasun hori. Bitartean, guk geure aldetik, beti bezala segituko dugu: goiari eutsi eta beti horra begira; Euskal Herrira, noski.*

*Galdera batzuk ere egingo nizkizueke… Asko aldatu al da? Ezagutu al duzue Euskal Herria? Autobide, saihesbide, zubi, zeharbide, tunel, bidegorri, errotonda, Abiadura Handiko Trena... Zer itxura du?*

*Jendea ziztu bizian al dabil? Entzuten al da kalean euskara? Euskal poliziek eta aguazilek euskaraz egiten al dute? Lanik aurkitu al duzue? Egia al da irteerako urte bateko laguntza kendu dizuela barne-ministroak?, zuek ere beste gizakiok bezala jan beharko duzue, ezta?*

*Ikusten al da 230.000 pertsona langabetuen haserrea? Nola bizi dira biztanleen % 17 langabe horiek? Nork gobernatzen ditu? Ez dute haserretzeko asmorik ala? Bai, gauza serioak dira horiek, baina baditut beste mila galdera goxoago, eta espero dut neure gabezian mila aldiz amets egin dudan gauzekin gozatuko duzuela: lagunartea, familia, loba-bilobak, pintxo-poteo batzuk, mendi-irtenaldiak, afariak, Arrano elkarteko giroa, itsaso zabalera so eginez ikusmena askatzea, oskorriaren infinitoa, gaueko oskarbiko izarren hautsa, Urbixa eta Degurixako lasaitasuna, Aizkorrira igotzeko ahalegina, dozenaka urtetan enkistatua dugun korapiloa askatzea… Naturaren harmonia, txorien kantuak isiltasunean entzutea… Hori guztia eta gehiago duzue hor Euskal Herrian edo etxe ondoan, eta ondo antolatzeko eskarmentua duzuenez, asko disfruta ezazue naturaz eta herri giroaz mozkortu arte.*

*Zuen gozamenak gu ere animatu egiten gaitu eta.*

*Horixe dut sentitzen, eta hoberena opa dizuet kide guztioi, kikildu barik, erne, tente eta aske! Nor zareten gorde gabe.*

*Beti izango zaituztet gogoan.*



Fresnes Presondegia. Hango egiazko iluntasuna. Gauez ikusten denean (ez da askotan ikusten), ilargia ederra da benetan; hori sentitzen nuen. Amets eginarazten zidan, eta lagun izan nuen ametsezko ihesaldi batean. Maitaleari poemak idazten ere laguntzen zidan ilargiak.
Fresnesen amesgaizto ugari ere egiten nituen. Han tragedia ugari gertatu dira, preso sozialekin eta preso euskaldunekin ere bai. Fresnesen historian zenbat hildako ote daude?, zenbat jipoi?...




Ziega. Fresnes. Frantziako presondegi gogorrenetarikoa da Fresnes. Ziega handi geratzen zitzaidan hirurentzat egina zelako. Bakarrik, heze, hotz, eri, ilun, zikin… Askoz txarragoa zen isolamenduko ziega: lau horma, iluna, lehio gabea; paper zati bat eta arkatza ziren genuen guztia.



Clairvauxko kartzela. Frantziako segurtasun-neurri handienak dituen horietakoa da. Han edukitzen dituzte kriminalik handienak, eta haiekin batera egon gara urtetan euskal gudariok ere. Euskal Herritik urrutien daudenetako kartzela. Bisitara joateko zailtasun ugari, bide luze horretan istripuak eta gorabeherak sortzen direlako. Ordea, kartzelak segurtasun-maila gogorrena izanik ere, posible da barruan besteetan baino erosoago bizitzea. Hobeto hornitua dago: kiroldegia eta tailerrak ditu, zuhaitz eta txoriak patioan, jatekoak hobeak... Errepresio moduen aldetik nahiko kontrajarriak dira Frantziako kartzelak. Maison Central direlakoak kondenak betetzeko tokiak dira: Fleury, Fresnes, La Santé eta beste. Ezin dira Espainiakoekin konparatu.




Fresneseko Presoen egoerari eginiko marrazkia. Garrasia!




Frantzian. Fleury. Leihotik lehiora soka edo hari luze batekin gauzak pasatzeari *pasar el carro* esaten zaio. Preso sozialen entretenimendua izaten da karroa botatzea, kafea, porrua, zigarroa, azukrea eta metxeroa izaten dira, besteak beste, txapatuta daudenean eskatzen dituztenak.



Clairvaux, neguan. Askatasunaz amets, natura begi bistan, satorraren lana gogoan. Hertsidura, horma, serpentina, begiluze eta alarma guztien gainetik, gure arima askatasun bila zebilen.






Clairvaux,  neguan. Gizona, ertzean. Itxaropena, lorean. Ateak, ordea, itxita. Ateak beti itxita.





Leiho-traparen detailea. Kanpotik itxura hori zuen. Barnean zegoen kidearen silueta ere ez zen ondo ikusten.




Fleuryko isolamendua. Astean behin dutxara eramaten gintuzten, bi bokik "eskoltatuta". Neguko zapatilekin dutxatu nintzen, txankleta gabe nengoen eta oinutsik egiteko oso zikina zegoen dena. Gero, lehortzerako, egunak igaro ziren. Saguak ere barre eginen zidan, harrituta.



Gauz ilunak
edo beltzak,
eta zikinak dudenean
batez ere: Beldurra sartzen dute.
Horrez aparte tristezia handia
ematen digute, baino ez luke
hola izan behar.

zergatik ikaratu eta
apaldu behar gera
errealitateak
esaten
duen
egiaren
aurrean ?

Fleury, Frantzia. Isolamenduko irudi bat. Kolektiboko kideontzat, gure borroka, plante, txapeo, gose greba, uko edo kexa guztien ondorioa izaten zen isolamenduko bakardadea (mitard). Gauetan liburu zikin bat ematen ziguten, besterik ez!



Patioa. Jaengo patioaren izkina batean, isolamenduko txokoan, txakurtegia zegoen. Hor egoten ziren hiru edo sei boki gu zaintzen. Neguan, isiltasuna eta hotza; udan, beroa eta euliak nagusitzen ziren. Txoko hori pilotan egiteko baliatzen genuen, baina txakurtegia ezin genuen ukitu. Pilotak, kanka, eta zarata hori zela-eta bokiek askotan debekatzen ziguten jolastea




Jaengo kartzelan urte sorta pasatzea egokitu zitzaidan. Urte makurrak izan genituen han, bokiek tensio handia sortzen ziguten. Hala ere, kideok, eguneroko bizitzan, bakoitza bere eginkizunetan murgiltzen ginen. Patio orduetan bat kirola egiten, beste bat arropak garbitzen, beste bat paseatzen, txantxetan edo adarra jotzen. Umorea oso garrantzitsua zen, eta, noski, neurrian erabili beharrekoa.



Jaen, patioko txokoan txakurtegia agertzen da, baita gure “frontoia” ere. Asko estimatzen genuen txoko hori. Frontoi honetako pilota, paleta, erraketa eta jolas lehiaketan, zenbat kolpe, zauri eta erorketa ez dugu izan? Erori eta odoletan hasi, anteojuak apurtu, erlojua ere bai...
Bai. Isolamendukoen plaza zen guretzat, txakurtegiaren aurrean. Ez dakit zenbat aldiz marraztu ote dudan txoko hori, beti desberdin marrazten dut; ordea, txakurrak betikoak dira, berdin egiten dute hozka.

Jaengo isolamenduko zuloaren eskema da. Istorio eta komeria asko gertatu ziren zigor gela horietan: borroka, txapeo, gose greba, barau edo uko. Tartean egoten ziren zenbait preso sozial zigorra ordaintzen. Haien arazo eta gabezia zirela medio, makina bat gaupasa egina dugu ateak joka, iturriaz, komunaz edo irratiaz egiten zuten arrabotsa zela eta. Horrelako giroan ez da erraza burua orekatzea eta hotz mantentzea.



Jaengo patio bazterrean, txakurtegiaren "epelera" hurbiltzen zen lotara txolarre multzo bat, neguko hotzari ihes egin nahian. Arratsaren ilunak ekartzen zituen, tokia hartzeko borrokatzen ziren, eta guk haiei so: Aske zaudete, baina ez duzue berogailurik!






Isolamenduko porlanezko mahaitxoa. Hor izaten nituen, karta, arkatz, paper, zinta, irrati, postal, liburu, gatzontzi, lima-lija, flexo… Nire gela, nire sukaldea zen, nire tailerra, nire kiroldegia, nire etxea, nire espazioa, baina eguzkia falta.



Jaen IIko patio ziztrina. Txikia, estua, zikina, kiratsa dator estoldatik. Bi alde: batean txakurtegia, bestean iparraldeko azken horma. Hormak, lau, beti altuak. Alanbreak zorrotz. Kutxiladun alanbre kizkiak. Gu, pentsakor…



Jaen II. Patioa. Badirudi satelite batetik egin argazkia dela. Lau kide paseoan. Eguneroko errutina. Paseoa, korrikaldia, pilota, kafea, dutxa moduko bat ere bai, eta, noski, telefono deia! Garrantzitsuena!




Jaen II. Isolamenduko galeria. Hogei ziega erabilgarri. Bat, trasteroa. Beste bat, pakete eta motxilen almazena. Beste bat, ordenantzena. Beste bat, torturatzekoa, larruzko lau lokarri eta gerrikoaz. Galeria hori sarreratik ikusten da. Altzairuzko armairu erraldoia dela dirudi, dena metalezkoa. Hiru ate daude pasillotik hara: lehen atea automatikoa da, bigarrenak bi morraila du, klin-klan, hirugarrenak beste bi eta giltzarrapoa. Gaueko ordu txikietan, boki bat edo bi edo zortzi… zertarako datozen. Etortzen zirenean, bagenekien non zetozen, orain lehen atea, orain bigarrena, eta tropa osoa dator, joder!, zafarrantxoa dago! Haien arnas hotsaz eta pauso hotsez bagenekien zenbat zetozen.



Valdemoro. Txakurtegi aurreko aretoan egiten genuen planto! Kartzelako Frontean beti izan gara aktore; leku desberdinetan, gidoi berbera, programa desberdinak, kide desberdinak, klima desberdinak, baina errepresio berbera: zigorra!



Valdemoro. 2. moduluko patioa. Urtaro batzuetan zikoinak ikusten dira, pagausoak, untxiak, labezomorroak, zimitzak, txolarreak, arabazozoak... Baina dorre erraldoia da egunero ikusten dena.




Jaengo patioa. Boki bat guri begira, kide bat luzaketak egiten. Beste kide bat, soka ipini eta toallak zintzilikatu ondoren, estoldako kiratsari buruz haserre. Batzuetan, egunkari paperekin estaltzen genituen, busti, eta horrela mozten genuen kaka usaina.



Piszina. Igerilekua. Espainiako kartzela berrien antolakuntzan, igerilekua ere eraiki zuten. Nik Navalcarneron eta Alicante IIn ezagutu ditut. Laurogeita hamarreko hamarkadan kartzelak kiroldegia, futbol zelaia eta zine aretoa zituen, eta orain igerilekua. Presoari bere "bergizarteratze" bilakaeran "laguntzeko" igerilekua. Kanpoan, kalean, luxua dela pentsatuko dute presoek igerilekua izatea. Ordea, igerileku batek higiene neurri zorrotzak eskatzen ditu, edozein herritako igerileku publiko batean bezala, eta erresuma hauetan ez dago gastu hori egiteko dirurik. Kartzela modernoak ireki zituztenean, propaganda handia egin zuten: "Que eso y los vis a vis ayudarían a la reinserción social". Ordea, igerilekuetan gaitz ugari kontagiatzen zen, arriskua nabaria zen. Mantentzeko dirurik ez, leku batzuetan urik ere ez, beste batzuetan (krisia aitzakia) urak zikin, eta gainerakoak itxita. Egia da, igeri lekuak hor daude, kiroldegien bazterrean, itxita.




Navalcarnero. Jangela. Ehun eta hogei bat preso jangela bakoitzean. Ehun eta hogei bat preso modulu bakoitzean.



Jaengo isolamenduko ziegaren eskeletoa. Hamar urtez hor paraitutakoa iltzatua dut.




Jaen, isolamenduan. Bi marrazki haue-tan ikusten da isolamenduko ziega nolako sinplea zen. Ziega burdinazko armairu batean kokatzen da. Barnean zementuzko “mahai” modukoa du, zementuzko apal batzuk nire puskak apailatzeko, eta, txokoan, komun zikin bat eta ur txorrota. Ez ispilurik, ez biza-rra egitekorik, ez orratzik, ez azazkalak moztekorik, metalezko ezer ez! Eta lei-hoa?, kanpotik nolakoa den. Hori “tra-pa” bat da, ez leihoa. Dena burdinaz atondutako “trapa”. Horrela, eguzkia, zeru urdina eta argi naturala ikusteke, hamar urte igaro ditugu zulo honetan. Hala ere, estoldetako usain txarra (ki-ratsa) eta salamankesak sartzen ziren ziegara. Dozena bat aldiz, bi dozena aldiz marraztu dut ziega. Eta ez da izan maite dudalako.



Valdemoroko ziegan. Sotoko apalategian zapatilak, txankletak, komuneko papera, lixiba, ura… puskak atontzeko manerak…



Valdemoro. Ziegako txokoa. Detailea, neure puskak edukitzen nituen manera. Balde edo kubo bat urez betetzeko muntaia. Eta ispilua. Valdemorora eramaten ninduten aldi bakoitzean ispilua erosten nuen. Bizarra egiteko, aurpegia ikusteko, neure buruari esateko: Ondo nagok! Oraindik eutsiko zioat!
Ziega guztietan daude plastikozko "ispiluak", baina horiekin ez da ezer ikusten, silueta izan ezik; beraz, preso guztiek erosten dute ispilu ertain bat edo bi…



Beste txoko bat. Ziegako angelu ertz batean dago telebista jartzeko apalategia. Telebista alokatu egiten da nahi izanez gero. Ordainetan, tabakoa edo bost euroko txartel bat astean. Badaude doblea kobratzen duten "artistak" ere, errutina egiten dutenak, eta mila istorio…




Jaengo kartzelan, 10 urtez, zulo batean egon zirenek ez dute berehala ahantziko hangoa. Marrazki hauetan, patioko bi txoko.



Txoko batean soka jartzen zuen kide batek egunero. Arropa eta toalla jartzen genituen lehortzeko. Han egiten zuen beroarekin bizkor lehortu ere…
Beste txokoan, txakurtegia eta frontoia ikusten dira. Frontoia deitzen diot, marra bat ipini eta pelotan egiten genuelako. Txoko asko, leku gutxi…

Bero handiak, izerdi patsetan, haizagailuak berak ere aire beroa botatzen zuen.



Valdemoroko ziega. Diligentzietara joaten ginenean, aurkitzen genuen ziega garbitu behar izaten genuen lixiba eta espartzuz. Batzuetan, gure kide batzuek utzitako ziegetan sartzen gintuzten, eta hori nabarmen ikusten zen garbitasun eta txukuntasunean. Baina bestelakoak ere tokatu zaizkigu, labezomorroak eta zimitzez beteak.



Jaen, isolamendua. Askotan idatzi izan dut paraje hartatik zerua ez nuela ikusten. Leihoa ez zela leihoa, "trapa" bat zela. Hiru lerro barrote eta sarea gehi trapa zituela ziegako "leihoak". Egun batez otu zitzaidan delako leiho hori, kanpotik nolakoa den marraztea, oso antzekoa egin nuen, kolorea ere. Kanpotik barneko kidearen silueta ikusten da, ilunetan, bultoa…
Ordea, hamabost edo hogei urte igaro eta gero, errepresioaren formak "aldatu" zituzten, eta boki batzuk zeozer humanizatu. Beste garai batean patioko belar txikiena ere kentzen ziguten, eta 2012an boki bat hasi zen loreontzi batzuetan belar batzuk ipintzen, beretzat, noski! Guk ziegatik ez genuen ezer ikusten. Boki hari, parlantxin samarra zenez, esan nion: "¿Por qué no lo pones en el patio?" Eta hark erantzun: "Ah! eso no, porque podéis esconder pinchos y utilizarlos como armas…".

Ziega zuloa. Ziegan, zokoak zikinak daudenean, garbitzea egokitzen zaigu. Baina zoko horiek, karea eta pintura eta hezetasuna dariola daudenean, garbituta ere zikin geratzen dira. Gero, puskak, gure gauzak, nonbaiten utzi behar, eta zoko guztiak okupatzen ditut. Une honetan ziegako mahaitxoa ere beteta dago, neure puskekin. Trastez beteta, dena eskura. Ez da oso txukuna izaten, baina bai praktikoa: dena eskura! Eta puska guztiak zer diren "grabatua dut": kartak, idazteko papera, boliak, arkatzak, anteoju bi pare, azazkalak moztekoa, agenda, liburua, lima, egutegia, karpeta bat instantziekin, beste bat, bi blok, kartera, erlojua, flexoa, pastillak, paperezko ahozapiak, orratzak, hariak, argazkiak, postalak, metxeroa, borragomak, goxokiak, bi kaxa margo, bi kaxa marrazteko arkatz berezi, poto bat azukre koskor eta deskafeinatu poltsa. Gero, lau poto pentsuarekin: aranpasak, mahaspasak, intxaurrak, pikuak… beste poto bat harri eta pitxiekin, koilara jokoa, oihalezko ahozapia. Mahaian tokia dago blok bat ipini eta idazteko; tokia dago, katilua ipinita, tartinak ogi eta eztiz egiteko; tokia dago janariaren bandeja jartzeko. Inguru guztia trastoz, puskaz betea dut. Horrela nago oso eroso. Horrela, dena eskura. Bakoitzak bere estiloa du nonbait.

Beti dugu begi bat egiten dugunaren zain; ondo, txarto, baldar, txukun, zikin, garbi, haserre, sano, pozik, gaixo, ero… Berdin da, beti daude gure portaera apuntatzen, ez dut nik esan beharrik.






Alikante II. Patioa. Presoak patioan, atzera eta aurrera, korrika eta eztabaidan. 2013an gaude. Garaiak aldatu dira. Pausoak eman nahi ditugu egoera desblokeatzeko… bidali dugu agiria herri mugimenduaz eta prozesuaz bat egiteko. Guk ez dugu oztoporik izan nahi, baina dorre beldurgarria guri so dago, ez digu espazio librerik utzi nahi.



Andaluzia. Zortzi probintzia eta klima zoragarria. Batzuentzat, noski! Esaten digute gure borrokan eta ibilbidean gorroto handia diegula espainolei. Ez da egia. Gorrotoa guri digute. Nortzuek? Eskuin muturreko taldeek, talde "parapolizialek" eta talde politiko interesatu batzuek. Gorrotoarekin gu jopuntuan jarrita biltzen dituzten botoekin bizimoldea eginez gobernatzen dutenek, horiek digute gorrotoa, guri eta abertzale guztiei.
Nik oso adeitsu begiratzen diet espainolei. Alacantekoei zein andaluzei. Eta, nola ez! ijitoei ere bai! Eurek guri diguten errespetuarekin tratatzen ditugu. Munduan dagoen etnia baztertuena da ijitoena, oso zanpatua, mespretxatua. Euren kultura ere berezia da, noski, eta kosta egiten zaie payoekin nahastea eta haiek ulertzea. Auskalo zenbat ijito dauden preso Andaluzia, Murtzia, Alacant eta estatuko beste kartzeletan. Andaluzian daude ijito gehien, eta kartzelan pilo bat. Libre doazela esaten didatenean, zera erantzuten diet: Zer? Orduan, oporretara zoaz? Pasatuko dituzu hilabete batzuk naturaz gozatzen, eta laster egingo dugu berriro topo erresuma hauetan.
Andaluzian harritu nauena, olibadia da. Basoak dira olibadiak, denak le-

rroan. Maldan gora, trabeska, diagonalean, dotore… Marrazki geometriko eleganteak. Lautadak, maldak, mendiak, "dunak" kilometroetan zehar. Zuhaitz potolo, zahar, gazte, landatu berri… Kordobako gizon batek erran zidan nola landatzen zituzten olibondoak aspaldi, 1950 inguruan edo; orain hori ere ezberdina izango da, azken urte hauetako ikerkuntzak bilakaera handia izan duelako. "Tú que conoces este tema, ¿Por qué suelen estar dos, tres y cuatro olivos casi juntos, sobre todo los olivos jóvenes?". "Mira, antes se plantaban así: se cava un agujero cuadrado de un metro, profundo, y se planta una rama o vástago en cada esquina y eso va creciendo, y ocurre que de los cuatro alguno se seca y no sale. Es por eso que suele haber dos o tres olivos juntos". Ni, harrituta! Uste nuen sagarrondoak bezala landatzen zirela.
Andaluzian, Herrera de la Mantxatik behera, Jaen aldean, furgoiaren zirrikituetatik ikusten nituen olibondo sailok, eta egunkarietan agertzen ziren albisteetan. Jaengo paisaia olibondoena da. Marrazki horiek baliagarriak izango zaizkit margolan txukunak egiteko. Hori guztia margotzen badut (Miguel Hernández poetari egin nion margolan bat omenaldi baterako), leku horietako paisaiari eta jende jatorrari, gorrotoa barik, kariñoa hartzen diedalako da. Andaluzian, Alacanten edo estatu osoan, paisaiak, klimak eta jende jatorrak merezi dute mirespena. Ez diet gorrotorik. Herreratik Jaenera bidean, Despeñaperros mendiartetik pasatzen ginenean zerriak kamioi handi batean bezala, gora eta behera, oka eta botaka, aurrera eta atzera, kurba bakoitzean urdaila lepora igotzen zitzaidan. Txapazko leihatilak lurrunez estaliak, ezer ikusterik ez, eta bi ordu faltako ziren oraino espetxera heltzeko. Kalbario hura bukatzeko deseatzen. Gorputza kartzelara ailegatzean deskantsua, lasaitasuna... Sinesgaitza bada ere, neure txabolora sartzeko deseatzen. Ingresoetan, kamioitik irten, eskuak atzean lotuta bost orduz eta gorputza hautsita, eta pikoloak: "Levanta los brazos!". Nik: "No puedo, estoy bloqueado… además esto es ilegal, en el camión-canguro no tenéis que poner las esposas de esta forma". Hark: "¿Cómo? Si sería por mí, yo te ataría, te colgaría del cuello y te pegaría siete tiros". Nik: "Así, así, como en África! Tú no vives en Europa…". Hark: "¿Cómo? ¿Qué has andado haciendo tú en la vida? ¡Te voy a matar a ostias!". Bultzaka, eztabaidaka, bokiak, puff... "Aquí no se pegan tiros" eta abar.
Noski, eskuin muturreko pikolo horiekin zernahi gertatzen ahal da. Izugarrizko gorrotoa digute eta, dozenaka bidai egiten ditugunez, kide askok jaso dituzte jipoiak.
Horrelako trantzearen ondoren, preso sozialek: "Vasco, ¡ánimo! No te cortes,

que a nosotros también nos patean…". Hori entzunda, nolabaiteko lasaitasuna hartzen duzu, eta pentsatzen duzu preso sozialen munduan ez ezik, Espainian ere jende jator asko dagoela eta zure baitan kariñoaren hurbileko zerbait baduzula haientzat. Bestela, marraztuko al nuen hainbeste paisaia andaluziar? Mintzatuko al nintzen horrela? Sentimendu adeitsurik ez banu, gorrotoak jan egingo ninduke.



Bertan pairatu duguna pairatuta, Andaluzia gorrotatzeko motiboak ditugu, baina baditu bere lurretan harribitxi batzuk. Eguzkia, olibondoak, olibak, olioa, eta horiek marrazten dioten paisaia, bitxia. Egunkariko argazkietan eta furgoi polizialarekin paseoetan ikusitako irudiak marraztu nituen zenbait aldiz.



Gaztelako hegoaldean. Andaluzia. Guadalquivir. Ibai luzea. Haren gibelean ikusi nuen basoa. Olibondo basoa. Tarteka, kristalezko basoak ikusten dira, kristal beltzekoak. “Huertas solares”. Oso bitxia egiten da eguzki plakez egindako baratzak olibondoz inguratuta ikustea.





Olibadien geometria, lurraren formen aldera landatuak daude arbolak. Tarteka etxeren bat ikusten da, kortijo bat dehesa baten erdian bezala.
Udaberri aldera, oliben hondakinak botatzen dituzte olibondoen artean, simaur moduan. Alpachin esaten diote. Oso usain txarra izaten du, ozpin fermentatuaren kiratsaren modukoa. Usain hori kartzelako ziegaraino sartzen da.
Badaude mila eta gehiago urte dituzten olibondoak. Baliteke bizirik irauten duen zuhaitz zaharrena izatea. Oliboaren zura oso preziatua da artisautzan. Eskulturak egiteko ere baliagarria da.







Oliba. Hura biltzeko, oihal bat jartzen dute azpian, eta haga batzuk eskuz hartuta astintzen dituzte adarrak, gaztainak bezala, oliba guztiak bota arte. Gaur egun, ordea, biltze lan gehiena makina bidez egiten dute, eta beso mekanikoek astintzen dituzte zuhaitzak.



Uhartea. Herri bat edo bi desagertuak daude uharte honetan. Jaen probintzian dago. Ibai handi bat pasatzen da bertatik ere. Marrazki hau egunkarian ikusi nuen irudi batetik egin nuen. Poema bat da. Herria uhartean ia, olibondoz inguratua. Kontrastezko paisaia honek badu poesia: "Jornaleros andaluces de Jaén". Kastillanoa banintz, nik ere poesiaz jantziko nuke.



Despeñaperros. Izenak adierazten duen moduan, mendi malkartsua izango da. Nik, Andaluziatik Madrilera eta alderantziz, bidaia asko egin ditut. Marrazkian ikusten den kamioian, ordea, txapazko leihatila horietatik paisaia nolakoa den ezin da ondo ikusi. Badakigu orain autobidea dagoela eta kurba asko kendu dituztela, baina mendi bat igo behar da.




Pirinioetako herrixka bat. Argazki baten laguntzaz marraztu nuen. Mendia edo natura ikustean, ihes egiten dut ametsetan. Argiaren eta ilunaren tarte koloretsua, edertasuna eta hark dakarren plazerra.



Oskilasoa. Zein kolore politak dituen eta nolako aurpegi zatarra duen “nire maskota” honek.



Oskilasoa. Aurpegi alaiagoaz.




Araba-zozoa. Nire ziega aurrean, kamera zegoen kokatua; haren ondoan, zirrikitua; horman sartuta, zuloa. Hantxe egin zuten zozoek habia, zenbait astez ikusi nituen habia egiten, baita kumeak elikatzen ere. Kanpanario-zozoa, napar-zozoa edo araba-zozoa deitzen diogu. Une honetan, gure moduluan dugu bat. Mertxero baten maskota da. Txikitatik eduki du zaindua eta elikatua. Orain sorbaldan jartzen zaio, ahotik jaten dio, deitu eta etorri egiten zaio, eta uda partean ura jartzen dio bainatzeko. Gaur egun zigortua dago, hegaletako luma batzuk moztu ote dizkiote baten batzuek? Ezin du hegan egin, tailerrean geratzen da lotan. Udazkenean, lorategira, beste patiora, teilatura eta zuhaitzetara joaten zen txolarreekin batera. Patioan txolarreekin ibiltzen da, uste dute euren taldeko bat dela. Tailerreko kubo gainean pausatzean, txolarreak bezala abesten du, karnabak bezala ere bai. Ez diot zozoen kantua sekula entzun. Ez dakigu berriro hegaletako lumak irtengo zaizkion, udaberrian akaso? Hala bada, berriro joango da kurloi-txolarreekin beste lorategira, zuhaitzetara… Marko jarri dio izena Mertxeroak, bere ofizio-negozio horretaz zerbait dakielako izanen da. Ez da izen aproposa niretzat, baina txoriari berdin zaio, berdin egiten diolako kasu.



Irasagar bat adaxkan. Naturaren gabezia izan dut urtez urte. Naturak erakarri nau ikusita edo ikusi gabe; ezin ukitu, ezta usaindu, baina marraztu bai.



Arrosak eta tulipanak dira, besteak beste, komertzialki erabiltzen diren loreak. Loreek badute sinbolismoa baino zerbait gehiago. Loreak norbaiti bidaltzen dizkiozunean, maite duzula esaten diozu. Eta loreak marrazten badizkiozu gutun batean? Gutun horren mezua indartu egiten duzu, hartzailearen aurpegia alaitzen duzu…



Nafarroako herri ttipi polit bat. Gazte nintzelarik maitaleaz igaro nuen gau bat amesten dut. Herri txukun, paisaia eder… Naturaren gabezia marrazkiz asetzen dihardut.



Azpilleta. Ama utzi nuen txokoa. Gaurko Azpilleta ez da bera, gurasoen baserriaz amets. Negu hotzeko laino artean, zuhaitza larru gorritan, huntzez jantzia, aldi berean huntza izaten zen negu gosetiaren ahuntza elikatzen zuena, txepetxaren babesleku… Huntzak ez du orria aldatzen.

Etxola. Aurreko mendean, formatu honetako ardi etxolak zeuden Oñatiko bailaran; Arantzazu, Araotz eta beste zenbait auzotan. Guk honelako estilokoak genituen Azpilgain eta Sabixan. 1976ko errepresio garaian, Franco eta faxisten garaian, gure auzoan erre zituzten zenbait etxola eta arditegi. Azpilletan bat, eta etxe ondoko zuhaitzean, “nota” jarrita “La próxima será la casa”.



Sagardotegia. Zenbat aldiz hitz egin ote dugun sagardotegiaz! Zenbat albiste irakurri dugun txotx garaia dela eta, urtez urte, GARAn eta BERRIAn! Hor ibili gara, gure gogoa nola aseko genukeen, zer girotan, nortzuk joaten ote diren. Urteak pasata sagardotegiko giroa aldatu omen da. Joan-etorrietako garraioa ere aldatu omen da. Gaur egun autobusak betetzen omen dira bideetako alkoholemia kontrolak ekiditeko.










Ai, nire sagarrak! Gure sagastia, gure Pittana, nire zeramika, beti gauza ederren desira, kolore eta formen zale… Txindokiri ere kolorea jarri nahian.



Txantxangorria. Esaten dute txantxangorria dela gizakiaren lagun hurbilena, txori umilena, ahulena. Baserrietan txoko guztietan sartzen zen neguko hotzari ihes egiteko, gizakiaren beldurrik gabe. Txantxangorria da haurrentzat ere ezagunena. Txantxangorria eta txepetxa baserri inguruan daude beti. Euskaldunak balea lez, ordea, hogeita bi urte daramat txori hori ikusi gabe; kartzela ingurua maite ez duen seinale.




Oskilasoa. Kaioak, txolarreak, usoak, zozoak, katuak, arratoiak, xaguak, labezomorroak, zimitzak, euliak, armiarmak, tximeletak, sugalindarak, salamankesak eta beste, denak izan ditut bizilagun, etsai batzuetan, lagun eta entretenigarri besteetan. Beleen kontura ipuinak idatzi dituzte kide batzuek. Salamankesen inguruko ikerketa, beste batek. Mundu isolatu honetan ere agertzen dira bidelagunak. Ijito batek zozoa hezi zuen. Beste batek pagausoa. Beste preso sozial batek, txolarrea eta karnaba ere bai. Bakoitzak du bere lana, pazientzia, denbora… maskota bihurtzeko.



Baserritarren altxamendua. Naturaren langileak. Baserritarrak, abeltzainak, segalariak, ikazkinak, meatzariak, artzainak, lorezainak, granjeroak… Herrialde oso bat altxatzen denean, gobernuko jauntxoek ez dute zer eginik.




Arantzazu. Neure jaiolekua. Beti gogoan, beti buruan txertatua...



Errota. Aintzinako errota. Okindegia. Goxotegia. Zenbat istorio ez ote du gorde Aturriko errotak! Zenbat aldiz joan gara azken orduan ogi bila? Zenbat aldiz orduz at? Zenbat aldiz itxita zegoela? Beti uste genuen hor lortuko genituela afaltzeko falta zitzaizkigun ogia eta pastiza. Zenbat hitzordu galdu, zenbat egonaldi, zenbat susmo txar! Hor eta goiko iturrian, non-nahi, auto bat, neska bat, gizon bat ume batekin botijoaz ur bila, bikotea paseatzen edo auto bat aparkatua… dena zen errezelo txarrekoa. Denak ziren poliziak, edo ez! Hogei urte beranduagoko egunkarian azaldu da errotaren ospea, okindegiaren fama, pastizaren usaina… haren historiaren alde bat; guk ezagutzen dugu beste aldea.



Isolamenduan pentsakor zaude, ez dakizu zer egin, zer idatzi, zer pentsatu, zer gogoeta egin. Egutegia aztertu, senideez pentsatu, asteburuko bisitaz, txanda nori tokatzen zaion, aurreko bisitan anaiak komentatu zizkizun kontuez, udako berotzarraz, baserriko giroaz, langileez, sufrimenduaz, zorionaz, maitasunaz; mila gauza datorkizu burura, bizitzeak merezi ote duen… eta leihora azaldu den txori batek eten dizu une ilun hori. Pentsamendua aldatzen lagundu dizu, eta, azkenean, hau diot: gu, isolamenduan, "koma" bat bezalakoak gara, deus ez! Une honetan egin nuen laukia (Lau horma), koma bat (gizakia), porra bat (errepresioa) eta odol arrastoa…

Pentsamenduan dago presoa, pentsamendua du askea. Isolamenduak munduko kartzela guztietan daude. Isolamenduak alde guztietan dira gogorrak. Mundu guztian dira txarrak. Isolamenduari aislamendua ere esaten zaio, bakar-




dadea da. Isolamenduan geratzeak helburu bat dauka: inork ez jakitea! Han gertatzen dena ez du inork ikusten, komisarietako inkomunikazioan bezala. Inork ez du jakingo zer egiten dioten. Hiltzen bada, zera esango dute: gaindosia, bihotzekoa, bere buruaz beste egin, txaboloari su eman, zainak moztu ditu… Isolamenduan daudenek jasaten dituzten palizak eta botatzen dituzten garrasiak beldurtzekoak dira. Baina inork ez du ezer ikusten.




Eskultura erotikoa. Humanoidearen jolasa. Bolumena, kurba, fintasuna, distira, leuntasuna, saltsa eta fereka.



Klandestinoa. Egunsentiaren zain. Hitzorduaren zain. Azpilletatik ihes egin behar izan nuen aurreko astean familia agurtuta. Aste bat sororik soro eta etxez etxe ibili ondoren, Arrasate, Aizpurutxo, Errezil eta, Amezketako baserri batean gaua pasatu ondoren, Txindokiko magaletik Nafarroarantz! Abiatzeko zain, Amezketan, goizeko 7etan, kafesnea anisarekin gosaltzeko eman zidan amona dut gogoan, 1976ko maiatzaren 5a, sekula ahantziko ez dudan eguna.




Torturaren laugarren eguna.
Tramankulua zutikai. Mina. Izua. Zauria. Galdua, zorabiatua, hustua. Txotxongiloa zuhaitz batetik zintzilik. Heriotzaren atarian, marra gorria, marra beltza, itolarria… Hamar egun edo zortzi, denboraren kontrola galduta, eta laugarren eguna da bakarrik. Sokan, oreka eutsi ezinik. Ahul. Eroriko ote naizen beldur. Laugarren eguna.

# EPILOGOA



Gauzatxo bat aipatu nahi nuke. Nire borroka bizitzaren alboan gertatu zen historia zati bat. Ahaztua daukaguna. Norbaiti entzun diot: ahaztuetan ahaztuena. Deportatuak dira. Eta deportatuen historia beharko genuke egunero mahai gainean jarri. Presoen arazoa bezala, lehen mailan. Panama, Dominikar Errepublika, Cabo Verde, Ekuador, Aljeria, Gabon, Sao Tome eta Principe, Togo, Cuba eta Venezuela. Azken hogeita hamar urteetan, deportatu batzuk zendu egin dira erresuma horietan; historia iluna dugu hor ahantzia. Deportatuta bizi diren horien arrastorik ere ez duen jende multzo handi bat bizi da Euskal Herrian. Deportazioa bera ezagutzen ez duen belaunaldia oso bat ere badugu Euskal Herrian. Urrutiko kartzela da deportazioa. Gure bizitza gogorra da: zulo hauetan irautea; haiena, ordea, gogorragoa, eta haien familiena are gogorragoa.

**JOSEBA ARREGI EROSTARBE**
Jaén 2015



